inguratzen gaituen zarata artean
inoren berbarik entzutea,
eta gitxiago Jainkoarena: bildur gara!

Atara gaizuz, Jesus, gure bildurretatik.
Emoiguzu arretaz bizi izateko adorea,
Jainkoaren zerbitzari izan gaitezan
eta gugan haren hitza entzun daien
hurrekoek eta baita urrinagokoek ere.
—Amen.

† Bedeinka gaizala Jainko ahalguztidunak: Aitak eta Semeak eta Espiritu santuak.
—Amen.

† Goazen Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.

**Jesus, munduko argia;**
Jesus, zinezko egia;
Jesus, betiko bizia.



# Urtean zeharreko 2. domekea /B



# ELIZ ALKARTEAREN domekako elizkizuna

indar hartu daian, esan daigun gogotsu, Jesusek berak irakatsitako otoitza:

**GURE AITA** ZERUETAN ZARANA,
SANTU IZAN BEDI ZURE IZENA,
ETOR BEDI ZURE ERREINUA,
EGIN BEDI ZURE NAHIA
ZERUAN BEZELA LURREAN ERE.
EMOIGUZU GAUR EGUN HONETAKO OGIA,
PARKATU GURE ZORRAK
GEUK ERE GURE ZORDUNEI
PARKATZEN DEUTSEGUN EZKERO
ETA EZ GU TENTALDIRA EROAN
BAINA ATARA GAGIZUZ GATXETIK.

*(Gurejauna altara gainean jarri daiteke. Agurtu ondoren —belauna okertuz edo burua makurtuz—, esan):*

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **ERRUKI, JAUNA**.

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **ERRUKI, JAUNA**.

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **EMOIGUZU BAKEA**.

(*Hostia bat eliztarrei erakutsiz, esan:*)



**Damu-otoitza**

Gure grinetara egokituegiak gagozenean ez dogu aurrekorik ere ikusten eta geure atsegina baino ez dogu bilatzen. Jo daigun Jainkoaren errukira berak egin gaizan *entzule* eta Bakearen eragile:

—Jesus Jauna, Jainkoaren berba haragi*tu*a zaituguna, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, Jainkoaren berba bizi-e*moi*lea zarana, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, zeure Espirtuaz adoretuz, oinarri sendoak *gu*ra gaituzuna, *erruki, Jauna*.

**Aintzarako**

Goretsi daigun guztion Egile eta Aita/Ama dogun Jainkoa:

Jauna, gure Jainkoa: BEDEINKATUA ZU
Zeru-lurren egile: BEDEINKATUA ZU.
Guztien Salbatzaile: BEDEINKATUA ZU.
**Gure Jabe zara-ta: BEDEINKATUA ZU.**

Jesus, Jainko-Semea: BEDEINKATUA ZU.
Guregatik hil zara: BEDEINKATUA ZU.
Aitak biztu zaitu-ta: BEDEINKATUA ZU.
**Gure artean zagoz: BEDEINKATUA ZU.**

egun haretan. Arratsaldeko laurak inguru ziran.

Joani entzun eta Jesusi jarraitu eutsoen bietako bat Andres zan, Simon Pedroren anaia. Andresek bere anaia Simonegaz egin eban topo lehenengo, eta esan eutsan: «Mesias aurkitu dogu». (Mesiasek “Kristo” —hau da, Igurtzia— esan nahi dau). Eta Jesusegana eroan eban. Jesusek, begira-begira jarriz, esan eutsan: «Simon zara zu, Joanen semea; aurrerantzean "Kefas" izango da zure izena» (Kefasek Pedro —hau da, Harkaitza— esan gura dau).

*Jaunak esana*

*(Ondoren DIRU-BATZEA, egin daiteke)*

*Oharra*

Bada konpromiso bat gure beharrizanei erantzutea, eta gure inguruko behartsuei laguntzea. Horren ezaugarri dogu orain egiten dogun diru-batzea: behartsuaren ondoan gagozela adierazten dogu. Hau Jesusengandik beragandik ikasi dogu.

## ESKARIAK

† Badakigu Jainkoak dei egiten deuskuna, eta bere zerbitzurako, ezta? Eta badaukagu gure makaltasunen eta bildurren barri, ezta? Jo daigun eskarietara Jainkoak berak adoretu gaizan:



eta bihotz-maminean dot zure legea.
Iragarri dot batzar nagusian zure salbamena,
ezpanik ez dot itxi, badakizu, Jauna. R/.

## *HITZAREN LITURGIA*

Erakutsi egin behar deusku Jainkoak zenbat maite gaituan? Ez ete gara geu, gure txikikerietatik urten eta Jainkoak emoten deuskuzan erakutsietan murgildu behar dogunak maitasun horretatik dastatzeko? Ea laguntzen deuskuen irakurgaiok.

*Lehenengo Irakurgaiari Oharra*
*Santutegian “egoteak”, edo hango zerbitzari izate hutsak ez dau emoten Jainkoaren berbea, deia eta aztarnak ezagutzea; ikasi egin behar da, entzun egin behar da; eta irakasle bat behar da. Izango ete gara besteentzako irakasle Jainkoaren esperientzian? Ea adoretzen gaitun irakurgai honek.*

**Samuelen lehenengo liburutik** (1 Sm 3, 3b-10. 19)

Egun hareetan, Jaunaren zerbitzuan ziharduan Samuel mutikoak, Eliren ardurapean. Sasoi haretan Jaunak ez eban sarri berba egiten, eta ikuskariak bere ez ziran sarri jazoten. Egun batez Eli bere gelan egoan etzunda; begiak lausotzen hasi jakozan eta ezin eban ikusi. Artean atzamatu barik egoan Jainkoaren kriseilua. Samuel lotara joan zan, Jainkoaren kutxa egoan Jaunaren santutegian.

Jaunak dei egin eutsan Samueli, eta honek erantzun: «Hemen nozu». Lasterka Elirengana joan eta esan eutsan Samuelek: «Hemen nozu, dei egin deustazu-eta». Elik erantzun eutsan: «Ez deutsut nik dei egin; bihurtu eta egizu lo». Joan eta lotarako etzun zan.

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.

† Egunon, senideok. Sinismena ospatu gura dogu alkarregaz Jainkoari entzunaz eta haren mahaira hurreratuz, adorez bizi izateko. Behar dogu adorea; ez, horraitino, *fanatiko* izateko, entzule gartsu izateko baino.

Jaunaren Bateoan zeruak zabaldu egin zirala esaten jakun aurreko domekako ebanjelioan. Gaur barriro gogoratuko dogu zerua itxirik egotea eta Jainkoaren hitza urria izatea.

Ez ete dogu zoliak izan behar Jainkoaren berbea entzun ahal izateko? Bestela geure burugabekeriak izango dira gure gidari. Eta zelango triskantzetara heldu geintekezan horrela!

Elikatu gaitezan Jainkoaren berbatik eta haren ogitik, bere esanetara eraiki ahal izan daigun gure gizartea, alkar aintzat hartuz, maitatuz eta bakearen alde jokatuz.

## Sarrera-abestia

**GOAZEN ALKARTURIK biztuta fedea**
**argitan zabalik maitasun bidea.**

[1] Entzun dezagun apaltasunez
entzun dezagun Jaunaren hitza
Bere hitzetan gure egia
gure indarra gure bizia.



—Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak Jaunaren mahaira deituak.

* *Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko, baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.*

**Jaunartzerako abestia**

**Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik;**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

[1] Neu naz zerurik lurrera jatsi dan ogia
Aitak danori eskeinia.

[2] Nire gorputza egiz dozue janaria
ta nire odola edaria.

[3] Ogi hau jaten dauana beti da biziko,
hilterik ez dau ikusiko.

*(Gurejauna gorde ondoren, isilunetxo bat egin daiteke, eta oharrak eginez —balegoz— otoitza esanez amaitu).*

## OTOITZA

Zeu egon zinan, Jesus, une oro
Jainko Aita/Amaren esanetara,
eta irakatsi zeuskun
Jainkoaren nahia bilatzen.

Guri gatx baino gatxago egiten jaku

Espiritu Santua: BEDEINKATUA ZU.
Bizien bizigarri: BEDEINKATUA ZU.
Poz-emoile bikaina: BEDEINKATUA ZU.
**Negarretan pozgarri: BEDEINKATUA ZU.**

*Egin daigun otoitz Jesus gure Jaunak egiten eban lez: horretarako salmoak erabiliz:*

(**otoitz hau jesarrita egin daiteke**)

Sal 39,2 eta 4ab.7-8a.8b-10

**R/. Hemen nozu, Jauna, zure nahia egin dagidan.**




Itxaron dot Jaunagan, itxaron,
makurtu jat eta nire oihua entzun dau.
Ahoan eresi barri bat ipini deust,
gure Jainkoarentzat gorespena. R/.

Opari eta eskeintzarik ez dozu nahi izan,
baina belarriak edegi deustazuz.
erre-opari eta hoben oparirik ez dozu eskatu;
orduan esan dot nik: «Hemen nozu». R/.

Liburuan nitaz hau dago idatzita:
egin dagidala zure nahia.
Ene Jainko, gogozko jat hori,



—Elizearen alde: Bere makalkerien eta pekatuen zamapean itto ez daiten, hareetatik urteten ahalegindu daiten eta pekatariekin errukior agertu daiten, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Besteentzat eredu eta autorle izan behar daben eliz-gizon -emakume, irakasle, guraso eta agintedunen alde: irakasten edo agintzen dabenagaz bizikerea bat etorteko ahalegindu daitezan, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Ekandu txarrak hartu eta hondatuta bizi diranen alde: egoera larri horretatik urteten lagundu dakien, parkatzeko gauza izan daitezan eta ereduzko bizitza bat aurrera eroan ahal izan daien, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Gure gazteen alde: zoliak izan daitezan entzun eta ikasteko eta zerbitzeko, Jainkoaren deiak ere entzun ahal izan daiezan, *eskatu deiogun Jaunari*.

—Jainkoaren hitzera eta eukaristiaren ogira hurreratzen garanok zabalik egon gaitezan hitzak iragarten deuskuna barruan sartu dakigun, eta Eukaristiaren indarraz autorle izan gaitezan, *eskatu deiogun Jaunari*.

† Gure otoitzak Jesus Jaunak irakatsitakoan

Jaunak barriro dei egin eutsan Samueli. Hau jagi eta Eligana joan zan, esanez: «Hemen nozu, dei egin deustazu-eta». Elik erantzun eutsan: «Ez deutsut nik dei egin, seme; bihurtu eta egizu lo». Samuelek ez eban ordura arte Jauna ezagutzen, eta Jaunak ez eutsan bere berbea inoiz bere adierazo.

Hirugarren aldiz egin eutsan dei Jaunak Samueli. Hau jagi eta Elirengana joan zan, esanez: «Hemen nozu, dei egin deustazu-eta». Igarri eutsan Elik Jaunak ziharduala mutikoari deika, eta esan eutsan Samueli: «Zoaz lotara eta, norbaitek barriro dei egiten badeutsu, esan: "Egin berba, Jauna; zure morroi hau entzuten dago"». Bihurtu zan Samuel bere tokira eta lotarako etzun zan.

Jaunak, hurreraturik, dei egin eutsan, besteetan lez: «Samuel, Samuel!» Eta Samuelek erantzun: «Egin berba, zure morroi hau entzuten dago».

Samuel haziz zihoan, eta Jauna beragaz eban. Ez zan Jaunaren hitz bakar bat bere bete barik gelditu.

*Jaunak esana*

*Bigarren irakurgaiari*

*Jainkoak ez gaitu "ikutzen"; oso-osoan hartzen gaitu, eta oso-oson gura gaitu. Ez gara, ba, gauza bat mezatan gagozenean eta beste bat handik urteterakoan. Ezin izan geintekez Jesukristoren jarraitzaile mundura egokituak bagagoz. Izan gogoan Apostoluaren berbok entzutean.*

**San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo gutunetik** (1 Ko 6, 13c-15a. 17-20)

Senideok: Gorputza ez da haragikeriarako, Jaunarentzat baino, eta Jauna gorputzarentzat. Jainkoak, Jauna biztu ebanak, biztuko gaitu gu ere bere ahalmenaz.

Ez al dakizue zuen gorputzak Kristoren atal dirana? Jaunagaz alkartzen dana, espiritu bat bera egiten da Haregaz.

Egizue ihes haragikeriatik. Gizon-emakumeek egiten daben beste pekatu guztiak gorputzetik kanpora gelditzen dira; baina haragikeriazko pekatua egiten dauanak bere gorputzaren aurka egiten dau pekatu.

Ez al dakizue zuen gorputza Jainkoak emon deutsuen eta zuengan bizi dan Espiritu Santuaren tenplua dala? Beraz, ez zaree jadanik zeuenak; garesti ordainduz eskuratu zaitue Jainkoak. Goratu egizue, bada, Jainkoa zeuen gorputzaz.

*Jaunak esana*

Ebanjelioa

*Jesus aurkitzen dauanak ezin daike ezkutuan gorde, agertu egingo dau bere poztasuna, Jesusengana besteak ere erakarten ahaleginduko da… Egin deiogun harrerea ebanjelioari hori entzuteko,* ***Aleluia*** *abestuz, zutunik.*

***ALELUIA! ALELUIA! ALELUIA!***

## Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik (Jn 1, 35-42)

Aldi haretan, han egoan Joan Bateatzailea bere ikasle bigaz. Jesus handik igaroten ikusirik, esan eutsen: «Horra hor Jainkoaren Bildotsa». Ikasle biek, hori entzunik, Jesusi jarraitu eutsoen. Bihurtu zan Jesus eta, jarraitzen eutsoela ikusirik, esan eutsen: «Zeren bila zabilze?» Hareek erantzun: «Rabbi, non bizi zara?» (Rabbik "Maisu" esan gura dau). Jesusek esan eutsen: «Zatoze eta ikusiko dozue». Joan ziran, ikusi eben non bizi zan, eta Beragaz gelditu ziran